# DONOSTIYAC
## ERREGUE ETA ERREGUIÑAREN
### ZORIONECO ETORRERARI.

### ZORZICOA.

Biotz nereco seme
Maite gueyeguiyac
Ichoroten dizute
Ama Donostiyac :
Beso zabal laztanca
Atozte guztiyac
Aditzera pozezco
Zorion berriyac.

Laugarren egunean
Garagar illean
Degu Corpus vezpera
Aurtengo urtean :
Egun artan sartuco
Dirade goicean
Erregue ta Erreguiña
Donosti lurrean.

Gure Erregue FERNANDO
Oberic eciña
AMALIA onegui
Gure Erreguiña :
Donostiarrac eguin
Arren aleguiña
Ez liteque beñere
Izan zuben diña.

Dembora laburrada
Guelditzen zaiguna
Baña borondatea
Aundiya ta ona :
Eguin dezagun bada
Gogoz aldeguna
Gabaz eta egunaz
Utzi gabe lana.

Erregueac aguertzen
Diran istantean
Festac asico dira
Lurrean ta urean :
Eleizan , ichasoan ,
Campoan , bidean ,
Gazteluan , murallan
Cayean , calean.

Conchan egongo dira
Chalupa ta onciyac
Banderaz apainduric
Errencan guztiyac :
Eta beren mariñel
Gende egoquiyac
Erregueri eguiten
Ongui etorriyac.

Arcu bat egongo da
Sorotic aldean
Poliqui ipiniya
San Martin bidean :
Bere pillare eder
Berdiñen gañean
Apainduba guztiya
Goyen eta bean.

Ezpata dantzariyac
Irtenac bidera
Zanco, aztal ariñac
Aguer eguitera:
Erreguéren aurretic
Biurtuco dira
Bere Palaciyoco
Plaza atarirá

Dantza modu guztiyac
Izango dirade
Egunaz eta gabaz
Goiz ta arrasalde:
Broqueadu, jorrari
Escu, guizon, andre,
Arzai ta beste milla
Ceñec bere alde.

Piramide galantac
Edo metarriyac
Plazaren bi aldetan
Berdin ipiniyac:
Guztiz ederrac eta
Ecusi garriyac
Egunaz ichugarri
Gabean arguiyac.

Iru egunez dira
Iltzeco cecenac
Nafarroan arquitzen
Diran oberenac:
Españian autubac
Arteco guizonac
Pica, banderilla ta
Ezpata onenac.

Chit pamparroya dago
Eguiten carroza
Edertuco dubena
Aundizquiro plaza:
Eman bear diyote
Lau idic laguntza
Adar urrezcoetan
Loturican lanza.

Barrenen juango dira
Naiqueran jantziyac
Berrogueyetaraño
Dama ta galayac:
Cantari, soñulari,
Eta dantzariyac
Echeandre, manuac (*)
Gazteac guztiyac.

Gabac egun eguiñic
Gure beguiyetan
Argui ta subac eder
Plaza, calietan:
Baile ecusgarriyac
Aguintariyetan
Soñubac eta dantzac
Lecu guztiyetan.

Ez naiz aspertu baña
Asco degu gaurco
Utzi dezagun bada
Cerbait gueroraco:
Donostiyan diranac
Dute ecusico
Emen esan ez degun
Gauzarican asco.

(*) Matronas y Genios.